# H I L E T A

*Bere burua urkatu dauanarena*

**Sarrera-oharra**

Arrasti on, senideok.

Une gogor eta negargarri baten gagoz alkarregaz. XX(r)en etxekoentzat, eroan-ezina; hainbeste eta hainbeste galdera sortzen deutsezana, eta danak erantzunik bakoak.

Gu eurak babesten, zer egin, zer esan, zer pentsatu ere ez dakigula…

Eta, erdi lotsaz-edo, inguru honetatik aspalditxo urrunduta bagagoz ere, XX(r)en etxekoak babestu guran.

Geugaz dago Jainkoa. Ez deusku ezer aurpegiratzen. Bere Semea jarten deusku aukeran.

Apaltasunez zabaldu daigun gure barrua, bera izan daiten argituko eta adoretuko gaituana. Egin daigun bat Jainkoaren errukiagaz.

**Abadearen agurra**

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu Santuaren izenean.
—Amen.
† Errukia eta maitasuna dogun Jauna izan bedi zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Pazko Zuzia isiotzean**

Iruntzi egin geinkeez bizitzako ilunpeek. Kristogan sinisten dogunok, haren biztuereak argitzen gaitula dinogu Pazko Zuzia isiotzean. Egin daigun hori abesti artean.

**R/.** B**iztu da Kristo, Aleluia. Guregan dago, Aleluia**.

*—Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!*
*Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, Aleluia. R/.*
*—Jaunari kanta, goresmen eman: Aleluia!*
*bai bihotz eta bai gorputzean; Aleluia, Aleluia. R/.*

**OTOITZA**

Bizitzaren sorburu eta Jauna zaran horren aurrean,
zer esan ere ez dakigula alkartuta gaukazuz

atsekabez eta galdera askogaz zure seme-alabok.
Badakigu —eta halan aurtotzen dogu—
XX zure morroia, gure senidea,
zeure altzoan hartu dozula, bizitzaren betean.
Emoiguzu, arren une honetan behar doguzan
argitasuna eta alkar besarkatzeko adorea.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren…

**Irakurgaia** (Jb 3, 1-3.20-26)

Gauzak txarto joakuzanean inor erruduntzera joten dogu, edo baita Jainkoa madarikatzera ere. Jobek Jainkoari aurkeztuko deutso bere haserrea; baina bere ez-jakina autortuz jarriko da haren esku. Entzun.

**Job liburutik** 3, 1-3.20-26

Zabaldu eban, azkenean, Jobek ahoa
eta jaio zaneko eguna madarikatu eban.
Holan esan eban:
«Madarikatua jaio nintzaneko eguna
eta “Ume bat sortu da” esan ebeneko gaua!

«Zergaitik izten deutso Jainkoak
argia ikusten zoritxarrean dagoanari?,
zergaitik bizia emoten, atsekabea besterik ez dabenei?

Heriotzearen zain dagoz, eta ez jake heltzen,
altxorrak baino gogo biziagoz bilatu arren.
Pozez zorabiatuko lirateke,
hilobia aurkituko balebe.

Zertarako dau bizia, nondik jo ez dakian gizakiak,
Jainkoak urtenbide guztiak ixten deutsoez-eta?

«Negar-zotinak dodaz ogi,
urak lez, gainezka egiten dabe nire intziriek.
Izan be, zeri bildurrik handiena,
eta haxe jazoten jat;
zerk izutzen nauan gehien,
eta haxe datorkit gainera.

Niretzat ez da lasaitasunik, ez patxadarik;

atsedenik ere ez, egonezina besterik».
Azkenean, Jobek hauxe esan eutson Jaunari:
«Badakit dana daikezula zuk,
ez dagoala ezinezko egitamurik zuretzat.
Zeuk esana da:
“Nor da nire egitasmoa isilazo gura dauana,
ezer jakin barik?”
Bai, jakin barik egin dot berba
ulertu ezin dodazan misterioei buruz.
Entzutez baino ez zindudazan ezagutzen;
orain, neure begiz ikusi zaitut!
Beraz, damutzen naz esandakoaz,
hauts eta errautsetan jarrita».
Jaunak esana

**Erantzun salmoa** (Sal 102)

Ondo ezagutzen dauz Jainkoak gure makaltasuna eta mugak; horrexegaitik agertzen deuskuz errukia eta maitasuna. Egin daigun Jainkoaganako bidea salmo-otoitz honen laguntzaz.

**R/ ERRUKI HUTSA DOGU JAUNA, ERRUKIA TA MAITASUNA**

Bihozbera eta errukiorra da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ez gaitu erabiltzen gure pekatuek merezi bezala,
ez deusku ordaintzen geure erruen arabera. R/.

Zelan aita seme-alabentzat errukior,
halan Jauna begirune deutsoenentzat errukitsu;
ondo daki-eta zerez garan eginak,
gogoan dau hautsa garala gu. R/.

Gizakia! Haren egunak bedarraren pareko,
zelaiko lorea lez da loratzen
eta, haizeak ikutu orduko, bat-batean galtzen,
egoan tokian lorratzik itzi barik. R/.

Jaunaren maitasuna, barriz, betidanik betidaino
begirune deutsoenentzat,

haren salbazino-asmoak belaunez belaun dirau
haren ituna gordetzen dabenentzat,
legeak gogoan hartu eta betetzen dabezanentzat. R/.

**Ebanjelioa** (14, 32-38;15,33-39)

Egin deiogun harrerea ebanjelioari, han agertzen jakun Jesusengan argitasuna eta adorea aurkitzeko, eta haregaz bat egiteko, Aleluia abestuz, zutunik.

**Aleluia, Aleluia!**
Gure bihotzak zabal, Jauna,
sinistu daigun zure Semeak dinoskuna.

**Jesu Kristoren ebanjelioa san Markosen liburutik**

Getsemani izeneko landa batera heldu ziran, eta Jesusek esan eutsen bere ikasleei: «Geratu hementxe, nik otoitz egin bitartean».

Pedro, Santiago eta Joan eroan ebazan beragaz. Ikarea eta larria sentitzen hasi zan, eta esan eutsen: «Hilteko zorian nago tristuraz. Gelditu hemen eta egon erne». Eta aurreraxeago joanik, lurrean jausi eta otoizka zuzendu jakon Jainkoari, urrundu eiola ordu ha, ahal bazan. Honela inoan: «Abba, Aita! Zeure esku dago guztia; urrundu egizu nigandik edari samin hau! Baina egin bedi zeure nahia, ez nirea».

Ikasleengana joan eta lotan aurkitu ebazan. Pedrori esan eutson: «Simon, lotan? Ordu bete ere ezin izan zara erne egon? Zagoze erne eta egizue otoitz, tentaldian ez jausteko: gogoz gartsu izan arren, ahula da-ta gizakia».

...

Eguerdian, ilundu egin zan lurbira osoa hirurak arte. Hiruretan, Jesusek oihu handiz esan eban: «Eloi, Eloi, lema sabaktani?» (Hau da: «Ene Jainko, ene Jainko, zergatik itzi nozu eskutik?»)

Hau entzutean, bertan egozan batzuek esan eben: «Eliasi deika jabilk».

Orduan, batek, arineketan joan, belaki bat ozpinetan busti eta, kainabera bati musturrean loturik, edatera emon eutson, esanez: «Egon, ea jatorkon Elias kurutzetik erastera».

Baina Jesusek, deadar handia eginez, azken arnasa emon eban. Orduan, santutegiko oihala erdi-erditik urratu zan, goitik behera.

Aurrean egoan erromatar ehuntariak, zelan hil zan ikustean, esan eban: «Benetan, gizon hau Jainkoaren Semea zan».

Jaunak esana

**HOMILIA**

**ESKARIAK**

Makalak eta mugatuak egin gaituan Jainkoaren aurrean jarri daiguzan gure asmo guztiak, eskari modura:

—Eleizearen alde: behartsu eta gaixoak jotako guztiengan erein daian eroapen- eta itxaropen-hazia, (*eskatzen deutsugu, Jauna*).

**R/. ZEUGAN DOGU USTE ONA**

—Gaixoak eta eroan-ezineko egoeratan dagozanak argitasun izan daitezan osasuntsu eta ustezko zorionean bizi diranentzat…

—Gure gizarteak bere arduren artean lehentasuna emon deion gaixoak zaintzeari eta zaintzaileak sustatzeari…

—Eukaristia honetan alkartu garanok gure bizitza eskertzen eta zaintzen ikasi daigun, Jainkoaren Hitzaren argitan, Jesus gure Jauna eredu dogula…

Onartu, Jauna, gure erregua, eta esker onez erantzun deizugula egizu. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

(**Edo**)

Uste osoz egin deiogun otoitz Aita errukitsuari, bere Semea hilen artetik biztu dauan Jainkoari:

Eskatu daigun hilaren alde
Kristo bitarteko hartuz;
Gure otoitzak asko dagike
Harenarekin alkartuz.

**HARTU ZUK, JAUNA, HIL HAU ZERUAN**

**BETIKO BIZI-LEKUAN.**

Kristorena zan, Aitak deitua
harekin bizi ta hiltzera:
Aitak eroan daiala orain
Kristorekin berbiztera.

Lehen joanak ere izan begiz
gure otoitzak gogoan;
guztiak batu daizala Jaunak
bere maitezko altzoan.

**HARTU ZUK, JAUNA, DANAK ZERUAN…**
**BETIKO BIZI-LEKUAN.**

† Zeuk salbatzen dozuz, Jauna, gizaki guztiak, eta zure gogoa inor ez galtzea dan ezkero, entzun, arren, zure herriaren eskariak. Jesu Kristo.

**Oparien gainekoa**

Zure morroi XX(r)en hutsunean
alkarturik aurkitzen gaituzun Aita Jainko:
gure mugak, makaltasuna eta negarra
jarten doguz eskeintza mahai honetan.
XX zure Seme Jesusegaz bat egin dozun lez
geu ere alkartasunean bat egin gaizuzan.
Jesu Kristo.

**Prefazioa**

Jauna zuekin........................................... Eta zure espirituarekin.
Gora bihotzak............................................ Jaunagan daukaguz.
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari……………… Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Beragan argi egin deusku
biztuera zoriontsuaren itxaropenak

eta nahitaez hil beharrak goibeltzen gaituanok
gero hilezkor izango garan hitzak pozten gaitu.

Zure zintzoei, Jauna, bizia ez jake kentzen,
aldatu egiten jake,
eta, lurreko bizileku hau hondatzean,
betiko bizilekua esku**ra**tzen dabe zeruan.

Horregaitik aingeru eta goiaingeruekin,
ahalmen, nagusitza eta zeruko talde guztiekin,
zure aintzari gorazarre hau
beti eta beti [esaten] abesten deutsagu:

SANTU, SANTU, SANTUA...

## II. EUKARISTI OTOITZA

**Santu zara**, bai, Jauna,
eta santutasun guztiaren iturri;
egizuz, bada, santu ogi-ardao honeek,
zeure Espiritua isuriz,
Jesu Kristo gure Jaunaren Gorputz eta † Odol
egin daitezan guretzat.

**Berak**, saldu ebenean
eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta, eskerrak emonez,
zatitu eban eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

**Era berean**, afalondoan, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT

PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.
EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**V/.** Hau da sinismenaren misterioa.

**R/.** Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte,
hau dogu, hau, barri ona!

**Horregaitik**, Jauna,
zure Semearen heriotza eta biztuera gogoratuz,
biziaren ogia eta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
Zuri eskerrak emonez,
altaran zeure zerbitzari onartu gaituzulako.

**Eta apalik** eskatzen deutsugu,
Kristoren Gorputza eta Odola hartzen ditugunok
Espiritu Santuak bat egin gaizala.

**Izan gogoan**, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoan zeure Eleizea;
eroaizu maitasun osora,
Frantzisko gure Aita Santuarekin,
Joseba gure Gotzainarekin,
~~*(I. Gotzain Laguntzailearekin,)*~~
eta eleiz-gizon (-emakume) guztiekin batean.

**Era berean**, izan gogoan, Jauna,
gaur mundu honetatik zeugana eroan dozun
**XX** zure zerbitzaria;
zure Semearekin bat egin dan hau
biztueran ere berarekin bat izan dadila.

**Baita izan** gogoan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diran gure senideak
eta hildako guztiak ere;
hartu egizuz zeure aurpegiaren argitan.

**Erruki zakiguz**, arren,
guk guztiok betiko bizitza jaritsi daigun,
Jainkoaren Ama Maria Birjina dohatsuarekin,
haren senar Jose santuarekin,
Apostolu santuekin
(*Parrokiako santu zaindaria, edo ergunekoa*)rekin
eta, gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batera goratu zaiguzan,
Jesu Kristo zure Semearen bitartez.

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN,
ZURI, JAINKO AITA AHALGUZTIDUN HORRI,
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN,
OSPE ETA AINTZA GUZTIA GIZALDI ETA GIZALDI GUZTIETAN.
**Amen.**

† Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik, emoiguzu bakea gure egunotan, zure errukiari esker pekatutik garbi bizi izan gaitezan eta estualdietan sendo; betiko zorionaren itxaropenean Jesukristo gure Salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozela.

—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.

† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei ‘bakea izten deutsuet, neure bakea emoten’; begira zure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.

—Amen.

† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa,
zeuk kentzen dozu munduko pekatua: Erruki, Jauna.
… emoiguzu bakea.

**Jaunartzea**

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**Jaunartzean**

**R/. Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik;**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

1 *Neu naz zerurik lurrera jatsi dan ogia*
*Aitak danori eskeinia.*

2 *Nire gorputza egiz dozue janaria*
*ta nire odola edaria.*

**Jaunartze ondorengoa**

Eskerrik asko, Jainko on eta errukitsua.
Alkartuta eta alkarren arduraz euki gaituzu
eta zeure hitzaz eta sakramentuez indarbarritu.
Bizitzaren ilunaldietan alkarren laguntza bilatu daigula
eta zeu aurkitu zaiguzala konfiantza osoaz

besoak zabalik eta irribarretsu.
Jesu Kristo.

---

(*Gorpuagaz edo errautsekaz danean…*)

**ERRESPONSOAN**

Hildako gure senideari azken agurra emotean, bateatua izan dala gogoratzen dogu uraz zipriztinduz; hantxe iragarri zan Jainkoaren semea/alabea zala Jesukristorengan. Orain honen berbiztean esku hartzen dauala iragarriko dogu, itxaropenez, abesti artean.

**Kantua**

**Heriotzeak desegiten dau** bizi-lekua munduan.
Baina zuk, Jauna, hartzen gaituzu zeure etxean, zeruan.
Joan jakuna onartu, Jauna, zeu bizi zaran lekuan.

Jaunaren nahiez aurkitzen gara agurtzera behartuak;
baina zeruko pozak daizala txukatu negar-malkuak.
Honen bidera beitez atera aingeru eta santuak.

Gure arteko gertakizunek ezbehar asko dakarte;
alkar maitatzen dogunok ezin bizi geintekez aparte.
Jainkoa lagun, esan dagigun: «*Agur, Egun handirarte!*»

**OTOITZA**

Betiko bizitzearen argitasunaz
gure negar-malkoak txukatzen dozuzan
Jainko Aita, bizitzearen Egilea:
entzun gure otoitz apala
eta hildako gure senide **XXXX** zeure altzoan dala jakiteak
biztu daiala gugan sinismen argitasuna
eta egunero zu otseintzeko (zerbitzeko) gogoa.
Jainko eta errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.
—Amen.

---

**Azken oharra**

Gure atsekabean, eta beste edozein unetan ere, Jainkoak ez gaitu bertan-behera izten. Eroan daigun bere

berbearen argitasuna eta bere maitasunaren gozoa. Eta izan daigun uste on: Aita dalako hartu dau senide izan dogun **XXXX**, betiraun osorako bere altzoan.

**Onespena**

† Jauna zuekin.
—Eta zure espirituarekin

† Bedeinka zaizela Jainko ahalguztidunak. Aitak…
—Amen.

**Azken abestia**

…

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.



Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta



beti guk Zuri eskerrak e-mo-te - a, Jauna, Aita guz-tiz san - tu,



Jainko ahalguztidun betiko ho-rri, Jesu Kristo gure Jau-na-ren



bi-tar-tez. Be-ra da munduaren sal - ba-me-na, gizon–emakume



guztien bi - zi - a e - ta hi - len biz - tu - e - ra.



Honen bitar-tez, zure handitasuna autortzen dau aingeruen tal-de-ak,



beti po-zez alkarturik zure au-rre-an. Onartu egi-zu, Jau-na, euren gores-



penekin bat egin daiguzala geuk e - re geu-re kan -tu –ho-tsak: